# SANTA APOLONIA
## birjina eta martiria



**Sarrera abestia**

**GOAZEN ALKARTURIK** biztuta fedea
argitan zabalik maitasun bidea.

[1] *Entzun dezagun apaltasunez*
*entzun dezagun Jaunaren hitza*
*Bere hitzetan gure egia*
*gure indarra gure bizia.*

[2] *Gurekin dogu maisu ta lagun*
*gurekin dogu, gurekin, Jauna!*
*Egin dezagun zuzentasunez*
*ta maitasunez bere esana!*

**Erantzun salmoa** 125

**R/. Malkoz erein baeben, pozez batuko dabe**




Jaunak Siongo atxilotuak erakartean,
ba gengozan amets-antzean.
Orduan bete jakun ahoa barrez,
gure mihina goratzarrez. **R/.**

Atzerrietan orduan esan eben:

«Jauna handikiro jokatua dabe».
Gugaz handikiro jokatua da Jauna:
hauxe da poza daukaguna! **R/.**
Bihurtu, Jauna, gure zoria,
Negeb-eko erreka-urak bezala.
Malkoz erein baeben
pozez batuko dabe. **R/.**

Haruntzakoan, hor doaz negarrez,
ereiteko gari-zorroa eroanez;
pozik etorriko dira honuntzakoan,
gari-azauak eskuetan. **R/.**

**(R/. Aleluia.)**




V/. Zorionekoa probaldian sendo irauten dauan gizakia!
Proba gainditu ondoren,
betiko bizia jasoko dau-eta sari. (R/.)

## JAUNARTZEAN

1. Ogi hau jaten dauanak izango dau bizia.
Kaliz hontan aurkitzen da Jainko-odol guztia:
**R/. Hor dogu janaria ta hor gure edaria.**

2. Jaungoikoak deitzen gaitu: bera dogu janari.
Beragan dogu aurkitzen osasuna ugari.
**R/. Zelan begiratzen deutson Jainkoak gizonari!**

3. Danok gaur jaten badogu ogi bat mahai batean
ezin izan gorrotorik gaurtik gure artean.
**R/. Alkar maitatu dagigun Jesusen izenean.**

## Azken abestia

**Jesus, munduko argia. Jesus, zinezko Egia.**
**Jesus betiko Bizia.**

Gure bihotz barruan biztu zure argia,
gaitezan gu munduan argi Jainkoz betia.